EPPK

**Mintzaidetza**

**<u>GATAZKA POLITIKOAREN KONPONBIDERAKO</u>**

**<u>FOROAREN ANTOLATZAILEEI</u>**

Agur,

EPPKren Zuzendaritzak lehen lehenik, berau ordezkatzen duen Mintzaidetza honen bitartez, Gatazka Politikoa eta zehazki bere ondorioak konponbidean jartzeko egiten ari zareten ahalegina aitortzera gatozkizue gutun honen bidez.

Garai konplikatuak ditugu, gatazkaren parte zuzen diren Frantzia eta Espainiaren jokabide oztopatzaile eta arduragabekoa kontuan hartuta. Gure aldetik, gure eskuetan dena sustatzen jarraituko dugu konponbide politiko integralaren mesedetan, gatazkaren ondorio eta arrazoiak konpontzeko norabidean.

EPPKak egindako hautu politikoa eta hartutako konpromisoen ildoan ekimen berritzaile eta inoiz eman gabekoa jakinaraztera gatozkizue, izan ere ekimenaren hartzaile zaituztegunez: **<u>datorren hilaren erdialdera ospatuko den Gatazka Politikoaren Konponbiderako Foro Sozialean parte hartzeko asmoa.</u>**

Gure aldetik, Foroan parte hartu ahal izateko espetxe-irteera berezia dagokionari helaraziko diogu. Baimenik jasoko ez bagenu EPPKren Bitartekari lanetan ari direnek ordezkatuko lukete gure lekua.

Adeitasunez,

**Xabier Alegria**
**Anabel Egues**
**Jon Olarra**
**Marixol Iparragirre**
**Lorentxa Gimon**
**Mikel Albisu**

2013ko otsailean